# Urtean Zeharreko XXIV. astelehena
## I. urtean
### I. Irakurgaia

*Egin otoitz Jainkoari gizaki guztien alde,*
*gizaki guztiak salbatzea nahi dau-eta berak.*

San Paulo Apostoluak Timoteori egindako lehenengo epistolatik

*1 Tm* 2, 1-8

Anaia maitea: Beste ezer baino lehen, gizaki guztien alde eskariak, otoitzak, erreguak eta esker emoteak egiteko eskatzen deutsut; baita erregeen eta agintea daben guztien alde be, modu nasaian eta baketsuan bizi gaitezan, jainkozaletasunez eta duintasunez. Eder eta atsegin jako hau Jainko gure Salbatzaileari, gizaki guztiak salbatzea eta egia ezagutzera heltzea nahi dau-eta berak.

Izan be, bakarra da Jainkoa eta bakarra Jainkoaren eta gizon-emakumeen bitartekoa be: gizon bat, Kristo Jesus, bere burua guztien salbazinorako ordain-saritzat emon ebana. Bere sasoian egindako autormena da hau, eta honetarako egin nau ni Jainkoak oihulari eta apostolu –

egia dinot, ez dinot guzurrik–, jentilen maisu, eurei sinismena eta egia irakasteko.

Beraz, toki guztietan gizonezkoek otoitz egin dagiela nahi dot, zerurantz esku garbiak jasoz, hasarrerik eta eztabaidarik barik.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 28 [27], 2. 7. 8-9 (R/. 6)

R/. **Bedeinkatua Jauna,**
**entzun dau-eta nire erregu-oihua.**

V/. Entzun nire erregu-oihua,
laguntza eskatzen deutsudanean,
eskuok zure santutegirantz
jasotzen dodazanean. R/.

V/. Jauna dot indar eta babeski,
nire bihotzak harengan konfiantza;
lagundu deust eta pozarren dot bihotza,
kantuz emoten deutsadaz eskerrak. R/.

V/. Jauna da bere herriaren indar,
berak igurtzitako erregearen babes eta salbazino.
Salbatu zeure herria eta bedeinkatu zeure ondarea,
izan beti honeen artzain eta gidaria. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Alderdikeriak badira zuen artean,*
*hori ez da Jaunaren afaria jatea.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik

*1 Ko* 11, 17-26. 33

Senideok: Oharpen honeek egiten deutsuedazala, ezin ditut ontzat emon zuen batzarrak, on baino kalte handiagoa egiten deutsue-eta. Hasteko, zeuen alkarte-jatorduetan zatituak zabiltzela jakin dot; eta neurri baten egia dala uste dot. Izan be, beharrezko da zuen artean alderdikeriak izatea, benetako kristauak zein diran hobeto agertu dadin.

Zeuen alkarte-jatorduetarako batzen zarienean, egiten dozuena ez da Jaunaren afaria jatea, nor bere afaria jaten hasten dalako, eta bata goseak gelditzen dan bitartean, bestea mozkortu egiten da. Ez ete dozuez zeuen etxeak jateko eta edateko? Ala gitxietsi egin nahi dozue Jainkoaren eleiz alkartea eta lotsatuarazo ezer be ez dabenak? Zer esan neikizue? Zorionak emon? Gai honetan ezin

deutsuet zorionik emon.

Jaunagandik hartu neban nik, neure aldetik zuei emon deutsuedan hau: Jesus Jaunak, saldu eben gauean, ogia hartu eta, esker onezko otoitza eginez, zatitu ebala eta esan: «Hau neure Gorputza da, zuentzat emona. Egizue hau neure oroigarri».

Afal ondoan gauza bera egin eban kalizagaz, esanez: «Kaliza hau itun barria da, nire Odolaz ezarria; egizue hau, edaten dozuen bakotxean, neure oroigarri».

Beraz, ogi honetatik jaten eta kaliza honetatik edaten dozuen bakotxean, Jaunaren heriotza iragartzen dozue, bera etorri arte. Honan bada, senideok, alkarte-jatorduak egiteko batzen zarienean, itxaron alkarri.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 40 [39], 7-8a. 8b-9. 10 eta 17 (R/. ik. *1 Ko* 11, 26b)

R/. **Iragarri Jaunaren heriotza, bera etorri arte.**

V/. Zuk ez dozu sakrifiziorik eta eskeintzarik nahi izan,

ez erre-oparirik eta pekatuen

parkamen-oparirik eskatu;
baina belarriak edegi deustazuz.
Horregaitik dinot: «Hemen nozu». R/.
V/. Hau dago nitaz liburuan idatzita:
egin dagidala zure nahia.
Atsegin dot, ene Jainko,
barru-muinetan dot zure legea. R/.
V/. Iragarri dot batzar nagusian zure justizia,
ez ditut ezpanak itxi, ondo dakizu, Jauna.
Poztu eta alaitu beitez Zugaz
zure bila dabiltzanak.
«Handia da Jauna» esan begie beti
zure salbazinoa maite dabenek. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *Jn* 3, 16

R/. **Aleluia.**
V/. Hain maite izan eban Jainkoak mundua,
bere Seme bakarra emon eutson;
harengan sinisten dauanak betiko bizia dau.R/.

## EBANJELIOA

*Israelen bertan be ez dot aurkitu holako sinismenik.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen

liburutik

*Lk* 7, 1-10

Aldi haretan, Jesus, herriari egindako hitzaldia amaiturik, Kafarnaumen sartu zan. Bazan han erromatar ehuntari bat, eta honek morroi bat eban oso maitea; morroia txarto egoan, hilzorian. Ehuntariak, Jesusen barri entzunik, judegu-buruzagi batzuk bialdu eutsozan, morroia osatzera etortzeko erreguaz.

Hareek, Jesusengana joanik, arren eta arren eskatu eutsoen: «Merezidu dau Zuk hori egitea, ze, maite dau gure herria eta berak egin deusku sinagoga be».

Jesus eurekin joan zan. Etxetik hur samar zala, lagun batzuk bialdu eutsozan ehuntariak, esatera: «Ez hartu nekerik, Jauna, ze, ni ez naz inor Zu nire etxean sartzeko. Horregaitik, ez naz ausartu neu Zugana joaten; nahiko dozu berba bat esatea, nire morroia osatzeko. Neuk be, neu inoren menpean egon arren, soldaduak ditut neure menpean, eta bati joateko agintzen badeutsat, joan egiten da; beste bati etortzeko agindu, eta etorri; eta nire

morroiari zeozer egiteko esan, eta halan egiten dau».

Hau entzutean, Jesus harritu egin zan haretaz eta, ondorik etorkion jenteagana bihurturik, esan eban: «Egia esan, Israelen bertan be ez dot aurkitu holako sinismenik». Mandatariak etxera bihurtu ziranean, osatuta aurkitu eben morroia.

Jaunak esana.

___________________________________2

# Urtean Zeharreko XXIV. martitzena

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Zuzendariak akatsik bakoa izan behar dau;*
*diakonoek be Jainkoak agertu eta*
*guk sinistutako egia kontzientzia garbiz gordetzen dabenak.*

San Paulo Apostoluak Timoteori egindako lehenengo epistolatik

*1 Tm* 3, 1-13

Anaia maitea: Egia da alkarte-zuzendari izan nahi dauanak eginkizun ona nahi dauala. Baina zuzendariak akatsik bakoa izan behar dau, behin bakarrik ezkondua, neurritsua, zentzunduna, gizabidetsua, ostatu-

emoilea, irakasteko trebea; ez ardaozalea, ezta eztabaidazalea be, bihozbera baino, baketsua eta ez diruzalea. Bere etxea ondo gobernatzen eta seme-alabak menpekotasunean eta errespetuan hezten jakin behar dau; izan be, zelan izango dau Jainkoaren eleiz alkartearen ardura, bere etxea gobernatzen ez dakianak? Ez dau kristau barri izan behar, harropuztu eta deabruaren antzera gatxetsia izan ez dadin. Kristau ez diranen artean be izen ona behar dau izan, desohorean eta deabruaren sareetan jausi ez dadin.

Diakonoek be agurgarriak eta berbako pertsonak izan behar dabe, ez ardaozaleak, ezta irabazi zikinei emonak be, Jainkoak agertu eta guk sinisturiko egia kontzientzia garbiz gordetzen dabenak. Lehenengo, izan beitez aztertuak eta, gero, akatsik bakoak badira, bete begie euren zerbitzua.

Emakumeek be agurgarriak izan behar dabe eta ez mihinzorrotzak, neurritsuak eta gauza guztietan fidagarriak. Diakonoak izan beitez behin bakarrik ezkonduak, euren seme-

alabak eta etxea ondo gobernatzen dakienak; izan be zerbitzu hau ondo betetzen dabenek ohorezko maila eskuratzen dabe, eta Kristo Jesusengan dogun sinismenak segurtasun handiz betetzen ditu.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 101 [100], 1-2b. 2c-3b. 5. 6 (R/. 2c)

R/. **Bihotz akats bakoz jokatuko dot.**

V/. Maitasuna eta justizia nahi ditut kantatu,
Zuretzat, Jauna, nahi dot soinua jo.
Jokabide akats bakoa nahi dot azaldu.
Noiz etorriko zara nigana? R/.

V/. Bihotz akats bakoz jokatuko dot
neure jauregi barruan.
Ez dot arretarik jarriko
ezelako maltzurkeriatan. R/.

V/. Lagun hurkoari ezkutuan izen txarra jartzen deutsona
isilduarazo egingo dot.
Bihotz-harroa eta handizalea
ez dot jasango. R/.

V/. Herritar fidagarriak aukeratuko ditut kontseilari,
jokabide zintzokoak izango zerbitzari.

R/.

## II. urtean

### I. Irakurgaia

*Zuek Kristoren gorputza zarie,*
*eta zuetako bakotxa gorputz horren atal.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik

*1 Ko* 12, 12-14. 27-31a

Senideok: Gorputzak, bat izanik be, atal asko ditu; baina atal guztiek, asko izanik be, gorputz bat bakarra osotzen dabe. Gauza bera jazotzen da Kristogaz be. Gu guztiok, judegu nahiz greziar, esklabo nahiz libre, Espiritu bat beragan izan gara bateatuak, gorputz bat bakarra egiteko. Eta guztiok Espiritu bat beretik edan dogu. Gorputza, izan be, ez dau atal bakarrak osotzen, askok baino.

Zuek, beraz, Kristoren gorputza zarie, eta zuetako bakotxa gorputz horren atal. Eleiz alkartean bakotxari bere tokia ezarri deutso Jainkoak: lehenengo apostoluak jarri ditu, bigarren profetak, hirugarren irakasleak, ondoren mirarigileak, gero osatzeko edo behartsuei laguntzeko dohaia nahiz

alkartea gidatzeko edo hizketa arrotzez berba egiteko dohaia dabenak. Danak apostolu ete dira? Danak profeta? Danak irakasle? Danak mirarigile? Danek ete dabe osatzeko dohaia? Danek berba egiten ete dabe hizketa arrotzez? Danak ete dira hizketa arrotzen interpretari? Deseatu egizuez dohairik onenak.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 100 [99], 2. 3. 4. 5 (R/. ik. 3c)

R/. **Jaunaren herri gara eta haren larreko artalde.**

V/. Lurtar guztiok, egin irrintzi Jaunari,
zerbidu egizue Jauna pozaren pozez,
sartu zaiteze oihu alaiz haren aurrera. R/.

V/. Jakizue Jauna dala Jainkoa,
harek egin gaitu, berarenak gara,
haren herri eta haren larreko artalde. R/.

V/. Sartu haren tenpluko ateetatik eskerrak emonez,
haren atarietan gorazarreak abestuz.
Emon eskerrak, bedeinkatu haren izena. R/.

V/. «Ona da-eta Jauna,
haren maitasuna betikoa,
haren leialtasuna gizaldiz gizaldikoa». R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Lk* 7, 16

R/. **Aleluia.**
V/. Profeta handia sortu da gure artean,
eta Jainkoa bere herria salbatzera etorri da. R/.

## EBANJELIOA

*Gazte, zeuri dinotsut: jagi!*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 7, 11-17

Aldi haretan, Nain izeneko herrira joan zan Jesus, bere ikasleak eta jente asko lagun zituala. Herriko sarrerara hurreratu zanean, hildako bat, ama alargun baten seme bakarra, eroien lur emotera. Herriko jente asko joian amagaz.

Hau ikustean, errukitu egin jakon Jauna eta esan eutson: «Ez egin negarrik!» Hurreraturik, hilkutxa ikutu

eban, eta eroienak gelditu egin ziran. Orduan, esan eban: «Gazte, zeuri dinotsut: jagi!» Jagi zan hildakoa eta berbetan hasi, eta Jesusek amari emon eutson.

Bildurrak hartu zituan danak eta Jainkoa goresten eben, esanez: «Profeta handia sortu da gure artean». Eta beste hau be bainoen: «Bere herria salbatzera etorri da Jainkoa». Judean eta inguruko lurralde guztian zabaldu zan gertaera honen barria.

Jaunak esana.

______________________________3

# Urtean Zeharreko XXIV. eguaztena

## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Handia da gure erlijinoaren misterioa.*

San Paulo Apostoluak Timoteori egindako lehenengo epistolatik

*1 Tm* 3, 14-16

Anaia maitea: Zu ikustera laster joateko asmoa dot; baina baleiteke luzatzea eta horregaitik idazten deutsut, jakin dagizun zelan jokatu Jainkoaren etxean, hau da, egiaren zutoin eta oinarri dan Jainko biziaren

eleiz alkartean.
Duda barik, handia da gure erlijinoaren misterioa:

Kristo, gizaki lez agertua,
Espirituak zintzotzat autortua,
aingeruek ikusia,
herriei iragarria,
munduan sinistua,
Jainkoak bere aintzan hartua.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 111 [110], 1-2. 3-4. 5-6 (R/. 2a)

R/. **Jaunak eginak handi dira.**
Edo: **Aleluia.**

V/. Bihotz-bihotzez emoten deutsadaz eskerrak Jaunari,
zintzoakaz batera batzarrean alkarturik.
Jaunak eginak handi dira,
gogoko dabezan guztientzat aztergai. R/.

V/. Ospetsu eta eder haren egintza,
betiko dirau haren salbazino-asmoak.
Bere mirariak gogoangarri egin ditu;
errukiorra da Jauna eta bihozbera. R/.

V/. Begirune deutsoenei janaria emon

deutse,
gogoan dau beti bere ituna.
Egintzetan agertu deutso bere indarra herriari,
beste nazinoen lurraldeak emonez berari. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Sinismenak, itxaropenak eta maitasunak diraue orain;*
*baina hiruretan handiena maitasuna da.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik

*1 Ko* 12, 31–13, 13

Senideok: Deseatu egizuez dohairik onenak. Eta orain bide bikainagoa adierazo nahi deutsuet. Nahiz eta gizakien eta aingeruen hizkuntzetan berba egin, maitasunik ez badot, brontze soinulari eta ezkila tintinlari besterik ez naz. Nahiz eta profezia dohaia izan, nahiz eta misterio guztiak eta munduko jakintza guztiak ezagutu eta mendiak lekuz aldatzeko adinako sinismena izan, maitasunik ez badot, ez naz ezer. Dodan guztia behartsuen artean banatu eta neure gorputza erretzeraino emonda be, maitasunik ez

badot, ez deust ezertarako balio.

Maitasuna eroapen handikoa da eta bihozbera; ez dau bekaizkeriarik, ez handiusterik, ez harropuzkeriarik. Ez da lotsabakoa, ez berekoia, ez hasarrekorra; kaltea ez dau gogoan hartzen. Ez da bidebakokeriaz pozten; egian pozten da. Maitasunak dana parkatzen dau, dana sinisten, dana itxaroten, dana ondo eroaten.

Maitasuna ez da sekula amatatzen. Profezia dohaia desagertuko da, hizketa arrotzez hitz egitea amaituko, jakintza be desagertuko. Erdizkakoa da-eta gure ezaguera, erdizkakoa gure profezia; eta, bete-betekoa etortzean, desagertu egingo da erdizkakoa. Ume nintzanean, ume lez berba egiten neban, ume lez sentitzen neban, ume lez pentsatzen. Gizon egin nazanean, itzi egin ditut ume-gauzak. Orain dana ilun ikusten dogu, ispiluan lez; orduan, aurrez aurre ikusiko dogu. Orain erdizka ezagutzen dot; orduan, oso-osoan ezagutuko dot, Jainkoak ni ezagutzen nauan lez.

Hiru gauza honeek diraue orain: sinismenak, itxaropenak eta maitasunak; baina hiruretan handiena

maitasuna da.
Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 33 [32], 2-3. 4-5. 12 eta 22.(R/. ik. 12b)

R/. **Bai dohatsu**
**Jaunak bere oinorde aukeratu dauan herria.**

V/. Ospatu Jauna zitaraz,
jo harentzat hamar hariko harpa.
Kanta egiozue kantu barria,
jo trebetasunez irrintzi eginez. R/.

V/. Zuzena da-eta Jaunaren hitza,
fidagarria harek egin dauan guztia.
Justizia eta zuzenbidea dau maite,
Jaunaren maitasunaz dago lurra betea. R/.

V/. Zorionekoa, Jauna Jainko dauan nazinoa,
harek bere ondaretzat aukeratu dauan herria.
Betor gugaz, Jauna, zure maitasuna,
Zugan dogu-eta jarrita itxaropena. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *Jn* 6, 63c. 68c

R/. **Aleluia.**

V/. Zure hitzak, Jauna, espiritu eta bizi dira;
zure hitzek betiko bizia dabe. R/.

## EBANJELIOA

*Soinua jo deutsuegu, eta zuek dantzarik ez;*
*hiletak jo, eta zuek negarrik ez.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 7, 31-35

Aldi haretan, Jesusek esan eban: «Norekin konparatuko neuke gizaldi honetako jentea? Noren antzekoa da? Plazan jesarrita dagozan umeen antzekoa da, ze, holantxe oihu egiten deutsie batzuek besteei:

"Soinua jo deutsuegu, eta zuek dantzarik ez; hiletak jo, eta zuek negarrik ez".

Izan be, etorri da Joan Bateatzailea, ogirik jaten eta ardaorik edaten ez dauala, eta deabruak hartua dagoala dinozue. Etorri da Gizonaren Semea, jaten eta edaten dauala, eta hauxe dinozue: "A zer tripontzi eta mozkortia, zergalari eta pekatarien adiskidea!" Baina ha onartu dabenek arrazoia emon deutsoe Jainkoaren jakituriari».

Jaunak esana.

# Urtean Zeharreko XXIV. eguena

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Egin kontu zeure buruari eta irakaspenari;*
*hori eginez,*
*salbatuko dozuz-eta bai zeure burua, bai entzuleak.*

San Paulo Apostoluak Timoteori egindako lehenengo epistolatik

*1 Tm* 4, 12-16

Anaia maite: Ez zagizala inork gitxietsi gaztea zaralako; izan zaitez, ostera, sinistedunentzat eredu hitzetan, jokaeran, maitasunean, sinismenean eta biziera garbian. Ni joan bitartean, arduratu zaitez Liburu Santuak irakurtzeaz, aholku emoteaz eta irakasteaz.

Ez izan ardurabako zeure dohaiari dagokionez: Jainkoak emon eutsun dohai hori, alkarteko profetek halan adierazorik, arduradunek eskuak ezarri eutsuezanean. Arduratu gauza honeetaz eten barik, guztiek zure aurrerapena garbi ikusi dagien. Egiozu kargu zeure buruari eta irakaspenari; eutsi sendo; hori eginez, salbatuko dozuz-eta bai zeure burua, bai entzuleak.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 111 [110], 7-8. 9. 10 (R/. 2a)

R/. **Jaunak eginak handi dira.**
Edo: **Aleluia.**

V/. Haren egintzak leial eta zintzo dira,
haren lege guztiak fidagarri,
beti-betiko ezarriak,
leial eta zuzen eratuak. R/.

V/. Askatasuna emon deutso bere herriari,
betiko ezarri dau bere ituna,
santua eta bildurgarria da haren izena. R/.

V/. Jaunaganako begirunea da jakituriaren oinarria,
benetan zuhurra, horren arabera jokatzen dauana.
Betiko dirau Jaunaren gorespenak. R/.

# II. urtean

## I. Irakurgaia

*Horixe da iragartzen dogun mezua,*
*eta horixe zuek sinistu dozuena.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik

*1 Ko* 15, 1-11

Senideok: Irakatsi neutsuen Barri Ona gogoratuarazoten deutsuet. Zuek

onartu egin zenduen, horretan sendo oinarrituta zagoze eta salbatu be horrexek salbatzen zaitue, nik iragarri neutsuen lez eusten badeutsazue. Bestela, alperrik sinistuko zenduen.

Nik hartu nebana bera eskualdatu neutsuen lehen-lehenengo, hau da, Kristo gure pekatuakaitik hil zala, Liburu Santuek esan eben lez; hobiratu egin ebela eta hirugarren egunean biztu egin zala, Liburu Santuek esan eben lez; Pedrori agertu jakola, eta ondoren Hamabiei; gero, bostehun eta gehiago senideri agertu jakon batera –horreetako gehienak bizirik dagoz oraindino, batzuk hil badira be–; gero, Santiagori agertu jakon, ondoren apostolu guztiei.

Beste guztiei agertu ondoren, neuri be agertu jatan, sasoia baino lehen jaiotako umea lakoa nazan honi.

Izan be, apostoluetan txikiena naz ni, apostolu-izenik be merezi ez dauana, Jainkoaren Eleizea pertsegidu neban-eta. Baina nazan hau Jainkoak bere graziaz egin nau, eta haren grazia ez da nigan fruturik bakoa izan; gainerako apostolu guztiek baino lan gehiago egin

dot, izan be; ez, ostera nik, Jainkoak nigaz, bere graziaz baino.

Holan, bada, bai hareek eta bai nik, horixe da iragartzen dogun mezua, eta horixe zuek sinistu dozuena.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 118 [117], 1-2. 16-17. 28 (R/. 1a)

R/. **Eskerrak Jaunari, ona da-eta.**
Edo: **Aleluia.**

V/. Eskerrak Jaunari, ona da-eta,
haren maitasuna betikoa da-eta.
Esan begie israeldarrek:
haren maitasuna betikoa. R/.

V/. Jaunaren eskuma guztiz garaia da,
Jaunaren eskumeak indarrez jokatu dau».
Ez naz hilko, ez, bizi baino,
Jaunaren egintzak kontatzeko. R/.

V/. Zeu zara nire Jainko, eskerrak Zuri!
Gora Zu, ene Jainko hori! R/.

## I. eta II. urteetan

## Aleluia

*Mt* 11, 28

R/. **Aleluia.**

V/. Zatoze Nigana nekatu eta zamatu

guztiok,
eta Neuk arinduko zaituet, dino Jaunak. R/.

## EBANJELIOA

*Hainbesteko maitasuna agertzen dauanean, pekatu asko parkatu jakon seinale da.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 7, 36-50

Aldi haretan, fariseu batek bazkaltzera gonbidatu eban Jesus. Joan zan, bada, Jesus fariseuaren etxera eta mahaian jarri zan.

Honetan, emakume bat, herrian pekatari lez ezaguna, Jesus fariseuaren etxean bazkaltzen zala jakinik, bertara joan zan, harzurizko ontzi bat ukendu eroiala. Jesusen atzean, oinen ondoan, jarri zan negarrez, eta haren oinak malkoz bustitzen hasi zan; gero, uleaz lehortu eta mosukatu ostean, ukenduz igurtzi eutsozan.

Hori ikusirik, konbidatu eban fariseuak inoan bere barruan: «Benetan profeta balitz, jakin beharko leuke zer-nolakoa dan bera ikutzen dihardauan emakumea, pekataria da-eta».

Jesusek esan eutson: «Simon, badot

zerbait zuri esateko». Harek erantzun: «Esaizu, Maisu».

«Mailegu-emoile batek zordun bi zituan: batak bostehun denario zor eutsozan, eta besteak berrogeta hamar. Nondik ordaindu ez eukela, parkatu egin eutsen biei. Bietako zeinek izango ete dau maiteen?» Simonek erantzun eutson: «Gehien parkatu jakonak, nik uste». Jesusek esan eutson: «Zuzen dinozu».

Eta, emakumeagana bihurturik, Simoni esan eutson: «Ikusten dozu emakume hau? Zuenean sartu nazanean, zuk ez deustazu oinak garbitzeko urik emon; honek, ostera, malkoz busti deustaz oinak eta bere uleaz lehortu. Zuk ez nozu mosua emonez agurtu; hau, ostera, sartu danetik ez da gelditu nire oinei mosu emoten. Zuk ez deustazu burua olioz igurtzi; honek, ostera, oinak ukenduz igurtzi deustaz. Hauxe dinotsut, beraz: hainbesteko maitasuna agertzen dauanean, pekatu asko parkatu jakon seinale da; gitxi parkatu jakonak maitasun gitxi agertzen dau». Eta emakumeari esan eutson: «Parkatuak

dituzu pekatuak».

Beste bazkaltiarrak euren artean esaten hasi ziran: «Nor ete dogu pekatuak parkatu be egiten dauan hau?» Baina Jesusek esan eutson emakumeari: «Zeure sinismenak salbatu zaitu. Zoaz bakean».

Jaunak esana.

______________________________________________5

# Urtean Zeharreko XXIV. barikua

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Zu, Jainkoaren gizon hori, ahalegindu zaitez justizian.*

San Paulo Apostoluak Timoteori egindako lehenengo epistolatik

*1 Tm* 6, 2c-12

Anaia maitea: Hau behar dozu irakatsi eta aholkatu. Besterik irakasten dauana eta Jesu Kristo gure Jaunaren hitz osasungarriari eta jainkozaletasunaren araberako irakaspenari egokitzen ez jakona harrokeriak itsutako ezjakina da, eztabaida eta berba hutsetarako jokera gaixotia dauana. Hortik sortzen dira bekaizkeriak, auziak, irainak eta susmo txarrak, etenbako eztabaidak;

horreetan dihardduenak burua galdutako jentea dira, egiaren zentzunik bakoak; horreek irabazpide bihurtzen dabe erlijinoa.

Irabazpen handia da, bai, erlijinoa, baina bakotxa dauanagaz konformatu ezkero; ez dogu ezer ekarri mundu honetara eta ezin izango dogu ezer eroan be. Beraz, zer jan eta zer jantzi izan ezkero, nahiko dogu. Aberats izan nahi dabenak tentaldiaren sarean jausten dira, gizakia hondatzen eta galtzen daben grina zoro eta kaltegarri askotan; izan be, dirua da gatx guztien sustraia; diruaren gogo biziagaitik sinismenetik aldendu eta atsekabe asko berenganatu dau hainbatek.

Zuk, ostera, Jainkoaren gizon horrek, ihes egizu horreetatik guztietatik eta ahalegindu zaitez justizian, jainkozaletasunean, sinismenean, maitasunean, eroapenean eta otzantasunean. Ekin sinismenaren burruka jatorrari eta eskuratu betiko bizia, haretarako dei egin deutsu-eta Jainkoak eta fede-autormen bikaina egin dozu, testigu askoren aurrean.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 49 [48], 6-7. 8-10. 17-18. 19-20 (R/. *Mt* 5, 3)

R/. **Zorionekoak gogoz behartsu diranak,**
**eurena dabe-eta Jainkoaren erreinua.**

V/. Zergaitik bildur izan zoritxar-egunean,
maltzurren gaiztakeriak inguratzen nauanean?
Euren ondasunetan dabe horreek konfiantza
eta euren aberastasun handiaz harrotzen dira. R/.

V/. Hara, gizakiak ezin dau bere burua askatu,
ezta Jainkoari bere biziaren erospen-saria ordaindu be.
Karuegia da biziaren erospen-saria,
noiz edo noiz ordaindu ahal izateko.
Amaibarik biziko ete da, bada?
Ez ete dau inoiz hilobia ikusiko? R/.

V/. Ez bildurrik izan nor edo nor aberasten bada,
bere etxeko ondasunak gehitzen baditu;
hiltzean ez dau beragaz ezer eroango,
aberastasunak ez deutso jarraituko. R/.

V/. Bizi zala, bere burua zoriontzen eban:

«Goratu egiten habe, dana ondo doakialako».
Baina asaben artera joango da,
gehiago argirik ikusiko ez dabenen artera. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Kristo biztu ez bada,*
*zentzunik bakoa da zuen sinismena.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik

*1 Ko* 15, 12-20

Senideok: Kristo hilen artetik biztu dala iragartzen bada, zelan esaten dabe zuetako batzuek hilak ez dirala bizten?

Hilak bizten ez badira, Kristo be ez da biztu. Eta Kristo biztu ez bada, oinarri bakoa da gure predikua eta zentzunik bakoa zuen sinismena. Eta, hori holan bada, gu be Jainkoaren testigu faltsu bihurtzen gara, haren kontra egiten dogu-eta testigantza Kristo biztu ebala esatean. Izan be hildakoak bizten ez badira, Kristo be ez dago bizturik.

Eta Kristo biztu ez bada, alperrekoa da zuen sinismena: zeuen pekatuetan zagoze oraindino. Eta zer esanik ez, hil

diran kristauak be galduak dira. Kristogan jarri dogun itxaropenak bizitza honetarako bakarrik balio badau, gizaki guztietan errukarrienak gara.

Baina ez, biztu da Kristo hilen artetik, heriotzatik biztuko diranetan lehen-frutu.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 17 [16], 1. 6-7. 8 eta 15 (R/. 15c)

R/. **Esnatzean zure presentziaz naz asetuko, Jauna.**

V/. Entzun, Jauna, nire justizi eskea,
aditu nire deadarra;
makurtu belarria nire otoitzera,
ez dot engainurik ezpanetan. R/.

V/. Deika nozu, Jainko, erantzuten deustazu-eta;
bihurtu nigana belarria, entzun nire berbea.
Agertu egizu zeure maitasun harrigarria,
erasotzaileengandik salbatzen dozuz-eta
zure esku ahaltsuan babesten diranak.

R/.

V/. Zaindu nagizu begi-ninia lez,
gorde ni zeure egoen kerizpean.
Nik, barriz, zuzena nazala,
zure aurpegia dot ikusiko,
esnatzean zure presentziaz naz asetuko.
R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *Mt* 11, 25

R/. **Aleluia.**

V/. Bedeinkatua Zu, Aita, zeru-lurren Jauna,
erreinuari buruzko Barri Ona
jente apalari agertu deutsazulako. R/.

**EBANJELIOA**

*Jesusegaz eta honen ikasleekin ebiltzan emakume batzuk,*
*eta euren ondasunez laguntzen eutsien.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 8, 1-3

Aldi haretan, herriz herri eta auzorik auzo ibili zan Jesus, Jainkoaren erregetzaren Barri Ona iragartzen. Beragaz zituan Hamabiak, baita espiritu gaiztoetatik eta gatxetatik

osatu zituan andra batzuk be: Maria Magdalena –honengandik zazpi deabru bota zituan–, Joana –Herodesen etxejagole Kusaren emaztea–, Susana eta beste asko; honeek euren ondasunez laguntzen eutsien Jesusi eta honen ikasleei.

Jaunak esana.

______________________________________________6

# Urtean Zeharreko XXIV. zapatua

## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Bete agindua akatsik barik,*
*Jauna agertuko dan egunera arte.*

San Paulo Apostoluak Timoteori egindako lehenengo epistolatik

*1 Tm* 6, 13-16

Anaia maitea: Gauza guztiak biziarazoten dituan Jainkoaren aurrean eta Pontzio Pilatoren auzitegian autormen bikaina egin eban Kristo Jesusen aurrean erregutzen deutsut: bete agindua akatsik barik eta zeresanik sortu barik, Jesu Kristo gure Jauna agertuko dan egunera arte, bere sasoian agertuazoko dau-eta Jainkoak.

Bera da Nagusi bakarra eta zoriontsua,
erregeen Erregea eta jaunen Jauna;
bera bakarrik da hilezkorra,
eta lortu ezinezko argian bizi da;
ez dau inoiz gizakiak ikusi
eta ezin dau ikusi be.
Berari aintza eta agintea betiko. Amen.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 100 [99], 2. 3. 4. 5 (R/. 2c)

R/. **Sartu zaiteze oihu alaiz Jaunaren aurrera.**

V/. Lurtar guztiok, egin irrintzi Jaunari,
zerbidu egizue Jauna pozaren pozez,
sartu zaiteze oihu alaiz haren aurrera. R/.

V/. Jakizue Jauna dala Jainkoa,
berak egin gaitu, harenak gara,
haren herri eta haren larreko artalde. R/.

V/. Sartu haren tenpluko ateetatik eskerrak emonez,
haren atarietan gorazarreak abestuz.
Emon eskerrak, bedeinkatu haren izena. R/.

V/. «Ona da-eta Jauna,
haren maitasuna betikoa,

haren leialtasuna gizaldiz gizaldikoa». R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Ereiten dana ustelkorra da,*
*bizten dana ustelezina.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik

*1 Ko* 15, 35-37. 42-49

Senideok: Norbaitek itaundu leike: «Zelan bizten dira hildakoak? Zelako gorputzez bihurtuko dira bizira?» Zentzunbako hori, zuk ereiten dozuna ez da ernetzen aurrez hiltzen ez bada. Eta ereiten dozuna ez da gero haziko dan landarea, hazi hutsa baino, gari-hazia nahiz beste edozein hazi izan.

Hildakoen biztuerakoan be gauza bera jazoko da: ereiten dana ustelkorra da, bizten dana ustelezina; ereiten dana mespretxagarria, bizten dana ospetsua; ereiten dana ahula, bizten dana indartsua; haragizko gorputza ereiten da, eta espirituzkoa bizten; haragizko gorputza badan lez, espirituzkoa be bada. Hau dino, hain zuzen, Liburu Santuak: «Lehenengo gizakia, Adam,

izaki bizidun egina izan zan»; azkeneko Adam, barriz, Espiritu bizi-emoile.

Ez zan espiritutzkoa izan lehenengoa, haragizkoa baino; ondoren dator espirituzkoa. Lehenengo gizakia lurreko hautsetik hartua izan zan; bigarrena, barriz, zerutik dator. Lurtarra, Adam, lurtarren eredu da; zerutarra, Kristo, zerutarren eredu.

Eta lurtarraren irudiko garan lez, zerutarraren irudiko be izango gara.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 56 [55], 10. 11-12. 13-14 (R/. ik. 14c)

R/. **Zure aurrean ibiliko naz, oi Jainko, biziaren argitan.**

V/. Nik Zuri deitu eta arerioek atzera egitean,
orduan jakingo dot neure alde dodala Jainkoa. R/.

V/. Jainkoaren promesa goratzen dot,
Jaunaren agintzaria goratzen,
Jainkoagan dot konfiantza,
ez naz ezeren bildur:
zer egingo deust gizaki hutsak? R/.

V/. Ene Jainko, egin neutsuzan promesei deutset eutsiko

eta esker onez ditut beteko.
Bizia libratu deustazu-eta heriotzatik,
oinak jaustetik,
zure aurrean ibili nadin, oi Jainko,
biziaren argitan. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *Lk* 8, 15

R/. **Aleluia.**
V/. Zorionekoak Jainkoaren hitza
bihotz onez eta zabalez entzunik,
barruan gorde eta iraupenez frutua emoten dabenak. R/.

**EBANJELIOA**

*Lur oneko hazia lakoak honeek dira:*
*hitza bihotz onez eta zabalez entzunik,*
*barruan gorde eta iraupenez frutua emoten dabenak.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 8, 4-15

Aldi haretan, herri guztietatik jentetza handia batu jakon baten, Jesusek parabola hau esan eutsen: «Behin baten, urten eban ereileak hazia ereitera. Ereitean, garau batzuk bide-bazterrean jausi ziran, eta zapaldu egin ebezan eta txoriek jan. Beste batzuk

harri artean jausi ziran eta, erne orduko, igartu egin ziran, hezetasunik ez ebelako. Beste garau batzuk sasi artean jausi ziran, eta sasiek, hareekaz batera erneta, ito egin eben hazia. Gainerakoak lur onean jausi ziran, eta erne eta bateko ehun emon eben frutua».

Hau esanik, holantxe egin eban oihu: «Entzuteko belarririk daukanak entzun begi».

Orduan, parabola honek zer esan gura eban itaundu eutsoen ikasleek Jesusi. Honek erantzun eutsen: «Zuei emon jatzue Jainkoaren erreinuaren misterioak ezagutzea; besteei, ostera, parabola bidez berba egiten deutset. Holan, begiratzen dabe, baina ikusten ez; entzuten dabe, baina ulertzen ez.

Hona, bada, parabolaren esanahia: Hazia Jainkoaren berbea da. Bide bazterreko hazia lakoak honeek dira: hitza entzuten dabenak, baina deabrua etortzen jake eta kendu egiten deutse hitza euren bihotzetik, sinistu eta salbatu ez daitezan. Harri arteko hazia bezalakoak honeek dira: berbea entzutean pozik hartzen dabenak;

baina, sustrairik bakoak izanik, denporaldi baten sinisten dabe, baina tentaldi-sasoian atzera egiten dabe. Sasi artean jausitako haziaren modukoak beste honeek dira: berbea entzuten dabenak, baina bizitzako arduren, diruaren eta atseginen artean itota gelditzen dira eta ez dira heltzen frutua emotera.

Lur oneko hazia lakoak, barriz, honeek dira: hitza bihotz onez eta zabalez entzunik, barruan gorde eta iraupenez frutua emoten dabenak».

Jaunak esana.